





# IBILBIDEAK ALDE ZAHARREAN BARNA

**Seigarren ibilbidean** antzinako San Zernin Burgoaren perimetro osoari buelta emanen diogu. Abiapuntua Errekoletoen plaza da, eta honako kale-plaza hauek bisitatuko ditugu: O-ko Andre Maria Plaza, Sanduandia, Descalzos, Jarauta, Campana, San Frantzisko plaza, Kale Berria, Aduanako zokoa eta, berriz ere, Errekoletoen plaza.

Komentuaren eskuinaldean, **Errekoletoen kaleak** Kale Nagusia eta O-ko Andre Maria plaza lotzen ditu. Kale hau plazak berak eta komentuaren hormak mugatzen dute ezkerreko aldetik, eta, beste aldetik, "Errekoletoen Kaperauen Etxeak" eta beste zenbait eraikinek, zaharrak zein modernoak, Alde Zaharrean desagertzear dagoen herri arkitektura mota berezi bat erakusten dutenak. Kaperauen Etxearen estiloa (2, 4 eta 6. zenbakietan) komentuaren fatxadarekin bat dator. Bi solairuko eraikin zabala da, goian adreiluzko arkuteria duena. XVII. mendeko jauregi hau Juan de Cirizak eraiki zuen bertan bizitzeko asmoz, Errekoletoen komentuaren diru-babesle baitzen. Aurreraxeago, 8. zenbakiko etxeak XIX. mendera arte Alde Zaharreko etxebizitza askok izan omen zuten itxura ekartzen digu gogora, izan ere, zurezko egitura kontserbatu du beheko pisuan eta bistako adreilua goikoan.

**O-ko Andre Maria plazak** egun hartzen duen lurzatian, Aro Modernoan (XVI. eta XVII. mendeak) "Pobla Nova del Mercat" izeneko auzoa kokatu

**Parrokiako jantokia (1)**: Errekoletoen kaleak eta Kale Nagusiak bat egiten duten izkinan, San Lorentzoko parrokoak doako jantoki bat ireki zuen XIX. mendearen bukaeran, neguko egunik gorrienetan 600 edo 700 bazkari ematera iritsi zena. Marmolezko inskripzio batek fundazio horren lana gogorazten digu, oraindik ere. Jantokia etxabean zegoen eta eguerdiko hamabiak arte izaten zen irekita, jendea txandaka hartzen zuela. Auzokideak 10:30ak aldera biltzen ziren plazan tokia hartzera. Hona hemen banatzen zen menua: babarrunak, ogia eta urdai erregosia (ostiraletan, sardinzarrak edo bakailaoa). 1900. urteko urtarrilaren 30ean beste jantoki bat ireki zuten Curia kalean. Kalkuluen arabera, jantoki horietan eta parrokietako, Udaleko edo Miserikordia Etxeko janari-bonoen bidez auzokideen ia % 10i ematen zitzaion jatekoa.



ARAZURI, J.J., *Pamplona estrena siglo,* Iruña, 1970, 103-107. orr.

1. Parrokiako lehengo jantokiak.
2. Garai bateko Florida Kabareta.
3. Oinutsen komentua.
4. Descalzos iturria.
5. Antzinako "Casa Barón", gaur egungo "Gallego" ostatu
6. Moja Domingotarren ikastetxea.
7. Nafarroako Museoa.
8. Pellejerias zokoa.
9. Kontuen Ganbara.
10. "La Agrícola" eraikina.
11. Barojaren etxea.
12. Iratiren geltokia.




zen. Errekoletoen eta Oinutsen komentuen hormek eta harresiek beraiek mugaturik, Alde Zaharreko eremurik pobreenatariko bat zen honakoa. Plazaren erdialdean etxeak eta baratzeak zeuden eta, XIX. mendearen erdialdetik, Zerrien Hiltegia.

Oinutsen komentuaren hesiaren ondoan dagoen basilika ttikia Esperantzaren Andre Mariaren edo **O-ko Andre Mariaren** izenpean dago. Erdi Aroan, ospitale ttiki bati atxikia zegoen, XIX. mendeko izurrialdian gorputegi gisa erabili zena. Egungo basilika 1988. urtean inauguratu zen. Harri polikromatuzko irudia, XIV. mendeko lehen erdialdean datatua, Iruñeko tradizio gotiko onenaren ildoan kokatu ohi da. Kaperaren beraren apaltasunari irudiaren ikusgarritasuna, edertasuna eta erliebe artistikoa kontrajartzen zaizkio. Izan ere, irudia ia 1,80 metro luze da eta tona erditik gorako pisua du; hortaz, Sanduandia (Saindu Handia) kalearen izena.



1908. urtean zerrien hiltegia espetxearen atzeko aldera eraman zutelarik, O-ko plaza zabal-zabalik gelditu zen. 50eko hamarkada arte, Errekoletoen hormaren ondoan iraun zuen aska batek eta, beste aldean, Andre Mariaren basilikak berak halako herri-giroa ematen zioten plazari. Berriki egindako urbanizazio desegoki batek, ordea, hiri-altzariak, argiak eta kapera bera "modernizatu" ditu. Hala ere, Ezkaba mendia aurrez aurre, Taconerarekin zuzeneko komunikabidea duelarik, O-ko plaza Alde Zaharreko sarbiderik eder eta lasaienetariko bat da.


Esperantzaren Andre Mariaren edo O-ko Andre Mariaren irudia

**Florida Kabareta (2):** gezurra badirudi ere, 40ko hamarkadatik aurrera, aipatu kabareta O-ko Andre Maria Plaza lasai honetan izan zen. "Music-Hall" gisako ikuskizuna iragartzen zen bertan "aretoko emakume dantzari ezin ederragoak eta Ameriketatik ekarritako orkestra; afariak edozein ordutan emateko prest eta gau osoan irekita". Arazurik umore maltzurrez idatzi duen bezala, ohiko bisitarien artean "baziren goizeko ordu ttikietan ehiztariz jantzita agertzen zirenak, kartutxera eta eskopeta gainean, aretoan sartu aitzin txoko batean ezkutatzen zituztenak; (...) eta goizeko seiak arte bertan gelditzen zirenak ere, etxeratu baino lehen Oinutsen lehenbiziko mezara joateko asmoz".


ARAZURI, J.J., *Historia, fotos y "joyas" de Pamplona*, Iruña, 1995, 136-137. orr.

Kaperatik abiatuta, **Karmeldar Oinutsen komentuaren (3)** atzeko aldea ixten duen hormari segituz, Sanduandia kaleak San Lorentzo, Jarauta eta Descalzos kaleek bat egiten duten tokira garamatza. Ezkerretara, Descalzos kaleak, XIX. mendera arte Burgoko "Carnicerías Viejas" deitutakoak, Karmeldarren komentuaren angelu zuzeneko fatxadaraino eramanen gaitu laster batean. XVII. mendean eraikitako multzo momumental honetan abade-eliza ikaragarria nabarmentzen da. Elizako arkupearen estiloa Errekoletoen komentuko atekoaren parekoa da. Salbuespen gisara, hiru nabe eta gurutzadura dituen eliza honetako aldare nagusia iparraldera begira dago eta ez ekialdera, mendebaldeko arkitektura kristauaren ohiko arau baten aurka joz. Duela urte gutxi, klaustroa eta antzinako gelak zaharberritu egin dira eta bertara ekarri da Udalaren Kultur Alorraren egoitza. Horren ondorioz, antzinako klaustroa "Erraldoien txokoa" bihurtu da, non hainbat kultur ekitaldi egiten diren. Udaletxeko fatxadaren atikoa errematatzen zuten Herculesen bi irudiak ere txoko honetan gordetzen dira, duela urte batzuk haien ordez bi kopia paratu baitziren.

XIX. mendearen azkeneko urteetan eta XX. mendearen lehenengo erdian, herri giroko Iruña isolatu hartako "auzo txinatarra" **Descalzos kalearen** inguruan zegoen, Sanduandia eta O-ko plaza aldean, toki baztertua eta urrutiratua zelako, seguruenik.

**Mende hasierako pasadizo bat:** Arazurik dioenez, behin, Alde Zaharrreko auzokide batek halako mozkorra harrapatu zuen, non bere lagunek, etxera eraman beharrean, Karmeldarren abituaz jantzi zuten eta Karmeldar oinutsen komentura eraman. Atea jo eta alde egin zuten. Monje batek "karmeldar-kide" gaixoa hartu eta gela batera eraman zuen gaua bertan eman zezan. Biharamunean, monjeak bisitariaren berri jakitera hurbildu zirelarik hara zer esan zien gaixoak: *"Zoazte Pellejerias kalera, 13. zenbakiko 5. pisura eta Emilio zahatogilea non den galde ezazue. Etxean ez bada, ni naizelako seinale. Etxean bada, ez dakit nor naizen".*



ARAZURI, J.J., *Pamplona estrena siglo,* Iruña, 1970, 47-48. orr.

**Eslava kaleko** izkinan, kaleko ezkerreko hormari atxikia, **iturri eder (4)** bat dugu, Luis Pareten estiloan (ikus 5. ibilbidea) inspiratua, nonbait. Dena den, Descalzos kaleko iturri hau XIX. mendearen bukaeran proiektatu zen, Done Jakue edo Merkatuko plazan jartzeko. 1876. urtearen inguruan, plazan egin ziren eraberritze lan sakonen ondorioz (ikus 2. ibilbidea), iturria egungo tokira ekarri zuten.



Descalzos kalea, Iturritik ikusita.

Eslava kalea hartuz gero, segituan, **Jarauta kalea** aurkituko dugu, 1906. urtera arte Pellejeria kalea deiturikoa. Alde Zaharreko beste hainbeste kaletan bezala, lehengo izena bertan nagusi zen artisautzako lanbideari lotuta dago. Larrugile horiek larrua landu eta saltzen zuten. Larrua zurratu, aldiz, Arga ibaiaren ondoan zurratzen zen, Zubi Berriaren inguruetan. Erdi Aroko lanbide honek mendetan izan zuen garrantziaz jabetzeko, aski dugu 1646. urteko errolda ikustea. Izan ere, urte hartan, besteak beste, 9 notario, 2 merkatari, zorrogile bat eta zenbat eta 14 larrugile zeuden auzoan. Bestalde, kaleko hainbat ostatuk, peñak eta elkarte gastronomikok aspaldiko soto gangadunak aprobetxatu dituzte, hiriak ardogintzan izan duen tradizio luzea oroitarazten digutenak (ikus 5. ibilbidea). Kalea aspalditik egon da jarduera honi loturik; izan ere, agiri zaharren arabera, XIX. mendearen amaieran eta XX. mendearen hasierako urteetan bederatzi txakolin-saltoki zeuden Jarautan; beraz, saltoki kopuruari dagokionez, kalerik txakolinzaleena zen, nabarmen gainera. Ostatu historiko horietako batzuk, oraindik ere, kalearen eguneroko bizitzaren protagonista nagusi dira, izena eta jabea aldatuta badute ere.

Kalea Udaletxe alderantz segituz gero, eskuinera, auzokideentzako patio zabal bat aurkituko dugu. **Santa Ana plazan** gaude. Hiriko txoko bitxi honek auzoko patroiaren izena darama, izan ere, Jarauta kaleko 40. zen-

**"Casa Baron" ostatuko prozesioa (5):** Taberna jator hau, 1947. urtera arte irekia, Jarauta kaleko 57. zenbakian zegoen, gaur Gallego ostatuak hartzen duen tokian, hain juxtu. 30eko hamarkadako uztailaren 6 batean, bezero talde bati ostatuaren buruan zegoen San Ferminen iruditxo bat prozesioan ateratzea bururatu zitzaion. Horrez geroztik, urtero, uztailaren seian, txupinazoaren ondotik, hainbat lagun elkartzen ohi ziren Saindua ateratzeko asmoz, ostatuko betiko bezeroak, hasieran, eta, urteen poderioz, iruindar asko eta asko. Urteak aurrera, La Pamplonesa musika banda ere, Udaletxe plazako ekitaldi ofiziala bukatutakoan, Casa Baronera hurbiltzen zen ikuskizunean parte hartzera. Prozesioa lehengo "Casa Paco" ostaturaino egiten zen, San Lorentzo kaleko 39.eraino, eta handik berriz ere abiapuntura. Alkatearen ofizio baten bitartez, 1952. urtean jaialdia bertan behera utzi zuten.


ARAZURI, J.J., *Historia, fotos y "joyas"* de Pamplona. Iruña, 1995, 163-165. orr.

bakiaren ondoan haren izenpeko kapera bat izan zen 1879ra arte. Aro Modernoan, sainduaren irudia paratzeko horma-konka bat ireki zen kalean, aldare txiki gisara. Kale Nagusiko etxeen atzeko fatxadek plazara ematen dute, nondik Burgoko kale zabalen artean tartekatzen diren larrain eta auzokideentzako eremu zabalak ikus daitezkeen. 1908. urtera arte, zerri-hiltzearen aurreko larunbat guztietan, ohiko zerrien azoka izaten zen plazan.



Berriz ere Jarauta kalean gaudelarik, gure ibilaldiari ekinen diogu Descalzos kaleko izkinara arte. Bi kaleen arteko gurutzegunean, **Domingotarren ikastetxearen (6)** ondoan, ezkerretara hartuko dugu **Nafarroako Museorantz (7)**

**Pellejeriako festak** Bazko egunean eta Santa Ana egunean ospatzen ziren. Ekitaldi nagusia bazkari herrikoia izaten zen, bazkari oparoa baina aukerabide gutxitakoa. XVII. mendetik aurrera auzoko prioreak hartu zuen bere gain bazkariaren gastua. 1615. urteko Bazko egunean, esate baterako, ondokoa jan-edan zuten auzokideek: sei errobo ogi (100 bat kilo), hamalau ontzi ardo (165 bat litro), 186 libra urdai (70 bat kilo) eta 22 libra gazta (ia 10 kilogramo). Ospakizunetan juglare edo danbor-jole bat izaten zen eta aurreko eta ondoko gauetan suak egiten ziren. XVIII. mendearen bukaera partean festa hauek gainbehera etorri ziren eta XIX. mendean, Alde Zaharreko auzoen banaketa desagertzearekin batera, behin betikoz galdu ziren. Gaur egun, San Lorentzoko, Santo Domingoko eta, duela gutxira arte, baita Santa Anako auzokideek ere egin ohi dituzten ospakizunak aspaldiko ohitura haien jarraipen dira.


ALBIZU, J., *"El barrio de las Pellejerías"*, Príncipe de Viana, 21 (1945), 647-688 orr.

**Ama Domingotarrak, neskentzako lehenbiziko ikastetxe publikoa Iruñean.** 1798. urtean, Udaleko ikasketa batzordeak Santa Katalinako Ama Domingotar beaten esku utzi zuen Iruñeko nesken heziketa. 1831. urtean 478 ikasle izatera heldu ziren. Geroago, Neskentzako Oinarrizko Eskola sortu zen, San Frantziskoko lehengo komentuan eta mojak irakaskuntza pribatuaren alorrean hasi ziren. Nafarroako Gorteak 1780. urtean onetsitako arauteriaren arabera, "maistrek kristautasunean oinarrituriko ohitura onekoak behar dute izan eta jokabide zintzoa egiaztatu (...), idazten eta irakurtzen eta Kristau Ikasbidea jakin behar dute, eta gainera, goruan eta tornuan iruten, manera guztietan josten, galtzerdiak, puntua eta farfail-lanak egiten eta, orobat, emakumeek jakin beharreko gainerako eginkizunak (...); aipaturiko gaitasun eta lanak zintzoki erakusten jakin beharko dute; irakurtzen eta idazten erakutsiko diete halakorik eskatzen dutenei eta, ikasle guztiei, Kristau Ikasbidea, zintzotasuna, apaltasuna eta zuhurtasuna".



VVAA. *Ellas, las mujeres en la historia de Pamplona,* Iruña, 1998, 134-138. orr.

jaisteko, lehengo Ospitale Orokorrerantz hain zuzen. XVI. mendearen erdialdetik 1928. urtera arte, Ospitalean sartzeko Descalzos kalea ixten zuen etxesail baten etxabeetan zegoen pasabide baten barna igaro behar zenuen. Alde Zaharreko zona honi "Rotxa" deitu zioten lau mende luzetan, Burgoko iparekialdeko angeluko gotorlekua babesten zuen dorrea zela kausa. Hala ere, Miserikordiako Andre Mariaren Ospitale Orokorra izan zen hiriaren alde honetako behin betiko hiri-fisionomiaren ezaugarri nagusia.




Nafarroako Museoko fatxada.

Jarauta kalera itzultzeko atzera eginen dugu eta San Saturninorantz abiatuko gara. Kaleko azken tarte honetan gaudela, parrokiako ikuspegi jatorra dugu, haren eliz atari eta dorreak begibistan. Eskuinera, segituan, **Pellejerias zokoa (8)** aurkituko dugu, 1980. urtean irekia, Jarauta kaleko 5. zenbakia bota ondoren. Kalearen eta auzoaren aspaldiko izena eman zitzaion zokoari eta Santa Ana plazako atzeko aldera ematen duen larrain bateko sarbidea da.

Kale Nagusia San Zerninen putzuaren ondotik zeharkatu ondoren (ikus 4. ibilbidea), **Campana kalean** barneratuko gara, lehenbiziko tartean San Saturninoko mendebaldeko hormatzarrari lerroz lerro jarraitzen diona. Elizako alde horrek nahiko itxura zakarra du eta bukatu gabe dagoela dirudi. Erdian portada neoklasiko txiki bat du eta hainbat arku zorrotz, aspaldiko ehorzleku izandakoak, seguruenik. Aurreraxeago, Bideko Ama Birjinaren kaperaren kanpoko aldea ikusi ahalko dugu, non, zortzi aldetako zinborioak eta goiko aldeko linterna garatua ikusita, San Lorentzon dagoen San Ferminen kaperaren kanpoko diseinua iduri baitu; izan ere,

Textua: Carlos Martínez. Diseignua: Birilo

**Antzinako Ospitale Orokorra.** Erdi Aroan laguntza zentro ugari zeuden Alde Zaharrean. Zentro horiek guztiak txikiak ziren eta oso baliabide zientifiko eta ekonomiko urrikoak, jakina. Horixe izan zen hiriaren osasun antolamendua XVI. mendearen erdialdera arte, harik eta Ospitale Orokorra eraikitzen hasi arte, Ramiro de Goñi Katedraleko Artxidiakono Mahaikideak sustatu eta finantziatua. Fatxada nagusia 1554. urtean amaitu zuten eta berpizkundearen estiloan hirian dugun atari bakarrenetariko bat da. Ospitaleak hantxe iraun zuen 1932. urtera arte, Barañain-Mendebaldeara lekualdatu arte. Kapera ere XVI. mendearen bigarren erdiko lehenbiziko urteetan eraiki zen eta bertako fatxada Garesko antzinako Bakardadearen Komentutik ekarri zuten 50eko hamarkadan. Ospitalea museo bihurtzeko, eraikina oso-osorik berreraiki behar izan zuten barrenetik. Modernizazio lanik aipagarrienak 1986 eta 1989. urte bitartean egin ziren.

oinplano zentraleko bi kapera horiek XVIII. mendean eraiki ziren, estilo barrokoan (San Ferminena 1696 eta 1717. urteen artean eta Bideko Ama Birjinarena 1758 eta 1776. urteen artean).

**Bideko Ama Birjina:** XII. mendeko bigarren erdian dataturiko irudi erromaniko txiki horrenganako debozioari loturik, Ama Birjinaren agerpena azaltzen duen kontakizun barroko bat mantendu da. 1487. urteko goiz batean, eliztar harrituek Ama Birjinaren irudia aurkitu zuten aldare nagusiaren gainean oraindik ere dagoen habean paratuta. Mirarizko agerpen horren berria lau haizetara zabaldurik, halako batean Alfaroko biztanleengana ere iritsi zen, hango Errege Bideko Ama Birjina lapurtu berria baitzen. Iruñera presaka etorrita, alfarotarrak ohartu ziren irudi "hegalaria" beren Ama Birjinarena zela. Auzitegietan haien aldeko ebazpena lortu zutelarik, irudia herrira eraman zuten. Hala ere, hurrengo goizean Ama Birjina San Saturninoko habean agertu zen berriz ere. Kondairak dioenez, errioxatarrek etsi behar izan zuten *"Jainkoaren borondatea garbi baitzegoen: irudiaz gozatzea eta altxorra gordetzea Iruñeari zegokion".*

Campana kalea Ansoleagan amaitzen da, **Kontuen Ganbararen (9)** eta **San Frantzisko plazaren** ondoan (ikus 5. ibilbidea). Alde Zaharreko plaza zabal eta eder hori XIX. mendearen erdialdetik aurrera egindako hainbat hiri-eraldaketaren ondorio da. Alde Zaharreko beste gune batzuen kasuan bezala, Frantziskotarren komentuaren desamortizazioarekin batera hasi zen artikulatzen, hango eliza 1849. urterako eraitsia baitzen. Komentua udal ikastetxe bihurtu zuten eta gaur egungo ikastetxea 1902 eta 1905. urte bitartean eraiki zen, Julian Arteagaren diseinuari jarraikiz. 1909. urtearen bukaeran, espetxeak eta antzinako Errege Kontseilua (garai hartan Lurraldeko Entzutegia) botatzeari ekin zitzaion (ikus 5. ibilbidea). Geroxeago, **"La Agrícola" (10)** eraikinaren obrak hasi ziren, 1912. urtean inauguratua. Plazaren alde batean, ikastetxetik hurbil, San Frantzisko irudikatzen duen estatua ikus dezakegu, plazari izena ematen

diona; 1927. urtean inauguratu zuten, Mariblancaren ordez, azken hau oraingo tokira eraman baitzuten, Taconerara, hain zuzen (ikus 2. ibilbidea). Alde Zaharreko gune hau monasterio, eliza eta espetxe gisa erabili zela egiaztatzeko, hainbat aipamen dokumental eta historiko heldu zaizkigu. Horri loturiko gertakizun makabroenetariko bat 1966. urtean gertatu zen, ikastetxearen fatxadaren parean hornidura lan batzuk egiten ari zirela, San Frantziskoko komentuaren elizako hilobietako hainbat gorpuzkin aurkitu baitzituzten.



**La Agrícola:** Alde Zaharreko eraikin enblematiko hau 1910 eta 1912. urte bitartean eraiki zuten, Francisco de Urcola arkitekto donostiarraren proiektuari jarraikiz. Eraikinaren estiloan elementu klasikoak, barroko-itxurakoak eta modernistak nahasten dira, halako jite paristar eta kosmopolita ematen diotenak. Eraikin honen hegal batean Iruñeko "Grand Hotel-a" inauguratu zen 1913. urtean. Alde Zaharreko beste batzuekin alderatuta, ez-ohiko neurriak dituen eraikin eder honek hainbat erabilera izan ditu, are bost solairuak etxebizitzetarako erabili eta gero ere. Iduri du haren kostuak (800.000 pezeta) ez ziela etekin onik ekarri enpresa sustatzaileei: 1925. urtean "La Agrícola-k" porrot egin zuen eta, bederatzi urte geroago, "Grand Hotel-ak" ateak itxi behar izan zituen.

Plazaren hegoaldeko aldea **Kale Berriak** okupatzen du. Kale hau, Alde Zaharreko luzeena, XVI. mendean jaio zen, San Zernin Burgoa eta San Nikolas Bizigunea bereizten zituzten harresi eta lubanarroak zeuden tokian berean. Plazaren lur azpiko aparkalekura jaisteko aldapetan harresiaren behealdeko aztarnak ikus daitezke, kalearen norabidetik segitu eta Taconerarantz eta Aduanako zokorantz doazenak. Jatorri bitxi horrek kalearen fisionomia eta izaera mugatu zituen, etxe partikularretako oso atari gutxi baitaude kalean. Fatxada gehienak lurzatien atzeko aldeak dira, Erdi Aroan harresiek itxiak zeudenak. Dena den, gaur den egunean, Alde Zaharreko kalerik jendetsuenetariko bat da, joan-etorri askotakoa, batez ere gauetan. Atari bikoitien aldean, kalearen bukaera partean, eraiki berriko etxesail batek kaleko 30. zenbakia **(11)** izandakoa dakarkigu gogora. Izan ere, 1976. urtean bota zuten eraikin hartako bigarren pisuan Pio Baroja bizi izan zen txikitan, 1881. urtetik 1886ra arte. Kanpotik interes berezirik gabeko eraikin horren beheko solairuan Erdi Aroko eraikin zahar baten aztarnak aurkitu ziren. "Erregearen dorreaz" ari gara. Eraikina bota zutenean, jatorrizko etxeko hainbat leiho, kapitel eta zutabe gotikorekin batera, Erdi Aroko areto handi bat, puntu erdiko sei arkuk sostengatua, ere bota zuten.

Kale Berriko 30. zenbakiko lurzatia San Frantzisko kaleraino iristen zen.





Urtetan hantxe izan ziren Goardia Zibilaren koartela eta etxebizitzak. Koartel horrek eta San Frantzisko kaleak berak berealdiko garrantzia izan zuten, 1936ko uztailaren 18ko kolpe militarra zela eta, Iruñean biziriko gertakizunetan.

Pio Barojak esana da Kale Berria *"oso tristea zela eta inortxo ere ez zela bertatik pasatzen"*. Bere amonak lehenbiziko aldiz ikusi zuenean ***"heriotzeko kalea"*** deitu zion. Dena den, XIX. mendearen bukaeran, Alde Zaharreko beste kale batzuek ere antzeko itxura omen zuten; fatxada utziak, argi gutxi, merkataritza bizitzarik ez, eta abar. Gainera, garai hartan ohikoa zen auzokideen artean istorio biolento eta beldurgarriak *"ahoz aho"* kontatzea. 1851ko balantze judiziala aintzat hartzen badugu, non 49 hilketa dokumentatzen diren (kontuan hartu garai hartan 15.000 biztanle zituela Iruñeak) edo XIX. mendearen amaierako eta XX. mendearen hasierako kronika beltzak, ohartuko gara hilketak eta indarkeriazko bestelako ekintza batzuk ohikoak zirela hiriaren eguneroko bizitzan.



CAMPO, L. del, *Pamplona durante el reinado de Isabel II,* Iruña, 1992, II. alea, 95. or.
LAPESKERA, R., *Crímenes en las calles de Pamplona,* Iruña, 1996.

Vesollako Markesaren jauregiaren fatxadak **Taconera kalera** eta **Aduanako zokora** ematen du. Alde Zaharreko mendebaldeko mugan kokatuta dagoen plaza eder honen muga-lerroak SanFerminen kaperaren hormak,

**Pío Baroja eta Alde Zaharrean bizitzea XIX. mendearen bukaeran.** *"Iruñean izandako bizipenik zirraragarrienetariko bat nire etxe ondotik, Kale Berritik alegia, heriotzara kondenaturiko zigortu bat pasatzen ikusi nuen egun hartan gertatu zen. Gaztelugibelera zeramaten, Taconerako Portalearen ondoko harresiaren bastioi baten aurrean hiltzera. Haren izena Toribio Eguía zen eta apaiz bat eta horren iloba hil omen zituen Agoitzen. Gurdi batean zeramaten, orban gorridun arropa horia jantzita, txano biribil bat buruan. Apaiz batzuek besoetatik helduta zeramaten, horietako batek gurutzea erakusten ziola; gurdiaren ezker-eskuin diziplina gizonen hainbat ilara zihoazen, eskuan kandela horiak zituztela. Errespontsuak kantatzen ari ziren; borreroa gurdiaren atzetik zihoan, oinez, eta hiriko eliza guztietan hil-kanpaia jo eta jo zegoen. Gero, arratsaldean, urkatua oraindik urkamendian zela jakinik, jakinminak hartua, hara joan nintzen, bakar-bakarrik, eta hurbiletik ikusi nuen. Mamu izugarria zirudien, beltzez jantzia eta goitik behera odoleztatua. Oinetako espartinak atereak zituen. Etxera itzuli nintzelarik, ezin izan nuen lo egin eta oroitzapena denbora luzean ibili zitzaidan gogoan, izan ere, hain nengoen hunkitua!*



BAROJA, P. *Desde la última vuelta del camino. Memorias. Familia, infancia y juventud,* Madrid, 1944, 142-143. orr.



Aduanako zokoa eta San Ferminen kapera. San Lorentzo elizan.

San Lorentzoren ondoan, eta Salestarren komentuaren atzeko hormak dira. Komentu horren fatxada nagusiak San Frantzisko kalera begiratzen du. Plazan dagoen zutabea, Ama Sortzez Garbia irudikatzen duena, 50eko hamarkadan altxatu zuten. Alde Zaharreko fronte hori

**Rodriguez Mella koronelaren hilketa** "Altxamenduak" Iruñean ekarri zuen gertakizun ilunenetariko bat izan zen. 1936ko irailaren 18ko arratsaldean, Iruñean begibistakoa zen kolpe militarraren antolatzaile eta bultzatzaile nagusietariko bat Mola jenerala zela. Gobernadore zibila, Goardia Zibileko burua eta alderdi errepublikazaleetako ordezkariak bildurik, indarrak eta artxiboak Tafalla aldera eramatea erabaki zuten, Nafarroa errepublikarraren hiriburua erdialdean kokatzeko asmoz. San Frantzisko kalean zirela, patioan lerrokatutako soldaduei aginduak jakinarazi ondoren, Rodriguez Mella koronela tiroz hil zuten koarteleko atearen parean, nork eta bere agindupeko soldadu batzuek. Rodriguez Mellaren hilketaren ondoren, Nafarroako Goardia Zibila Mola eta altxatuen esanetara jarri zen.



JAR COUSELO, G. *"La guardia civil en Navarra (18-07-1936)"*. Príncipe de Viana, 1991, 281-323. orr.

guztia Erdi Aroko harresi batek zaintzen zuen; izan ere, lur azpiko aparkalekuaren obrak egiten ari zirelarik, haren basamentuaren aztarnak agertu ziren. Harresi-lerroa San Lorentzoko dorreari eta San Llorente Portaleari, hots, mendetan hiriaren mendebaldeko muga izandako ateari, atxikita zegoen.

**Arielen etxea eta Iratiren geltokia (12):** XX. mendeko lehenbiziko urteetatik aitzina, Salestarren hormaren parean eraikitako barrakoi bat bi eginkizun horietarako erabili izan zen. Lehenbizi, Udal arielen etxea hartu zuen, hiriko azoketan saltzen ziren produktuen sarrera arautzeko. 1911. urtetik aurrera, Iruñetik Zangozara zihoan "Irati" trenaren geltokia izan zen. Barrakoiak 1946. urtera arte iraun zuen, hiriko tranbiak bertan behera gelditu ziren arte.

